# Garizumako II. astelehena

## I. Irakurgaia

*Guk pekatu egin dogu,*
*gaiztoak izan gara.*

Danielen Profezia liburutik

*Dn* 9, 4b-10

Jauna, Jainko handi eta ikaragarria, Zuk ituna gordetzen dozu eta leiala zara maite zaituenekin eta zure aginduak betetzen dabezanekin.

Baina guk pekatu egin dogu, gaiztoak izan gara eta zure aurka jaso gara, zure agindu eta erabagietatik aldenduz. Ez deutsegu jaramonik egin zure zerbitzari profeten esanei, honeek gure errege eta buruzagiei, gure asaba eta herri guztiari zure izenean hitz egin deutsienean.

Zu, Jauna, zuzena zara; gu, barriz, lotsa-lotsa eginik gagoz. Halan jazotzen jaku gaur guri, Judako jenteari, Jerusalemgo bizilagunei eta Israel osoari, hurko eta urrunekoei, zugaz desleial izateagaitik beste lurraldeetara sakabanatu dozuzanei.

Bai, Jauna, lotsa-lotsa eginik gagoz, geu eta gure errege, gure buruzagi eta gurasoak, pekatu egin dogu-eta zure aurka. Baina zure aurka jagi bagara be, Zu, Jauna, gure Jainkoa, errukiorra zara eta parkatzen dakizuna. Ez dogu entzun Jaunaren gure Jainkoaren berbea, bere zerbitzari profeten bidez emon euskuzan legeen arabera jokatzeko.

Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 79 [78], 8. 9. 11 eta 13 (R/. Sal 103 [102], 10a)

R/. **Ez gu erabili, Jauna, gure pekatuek merezi bezala.**

V/. Ez leporatu guri geure aurrekoen erruak!
Betorkigu laster zure errukia,
lur jota gagoz-eta guztiz. R/.

V/. Lagundu egiguzu, gure Jainko salbatzaile horrek,
zeure izenari ohore eginez;
libratu gagizuz eta parkatu gure pekatuak
zeure izenaren ohoreagaitik. R/.

V/. Heldu bedi Zuganaino presoen zizpurua,
libratu zeure indar handiaz heriotzara kondenatuak.
Eta guk, zure herri honek, Zuk larraturiko artalde honek,
eskerrak emongo deutsuguz beti,
zure gorespena zabalduko dogu gizaldiz gizaldi. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

Ik. *Jn* 6, 63c. 68c

V/. Zure hitzak, Jauna, espiritu eta bizi dira;
zure hitzek betiko bizia dabe.

## EBANJELIOA

*Parkatu, eta parkatuko deutsue Jainkoak.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 6, 36-38

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Izan zaiteze errukiorrak, zeuen Aita errukiorra danez. Ez txartzat jo inor, eta Jainkoak be ez zaitue txartzat joko; ez kondenatu, eta ez

zaitue kondenatuko; parkatu, eta parkatuko deutsue; emon, eta emongo deutsue: neurri betea, sakatua, estutua eta gainezkakoa emongo deutsue altzora. Izan be, zuek zein neurriz neurtu, halakoaz neurtuko zaitue Jainkoak».

Jaunak esana.

# Garizumako II. martitzena

## I. IRAKURGAIA

*Ikasi on egiten, bilatu egizue zuzenbidea.*

Isaias Profetaren liburutik

*Is* 1, 10. 16-20

Entzun Jaunaren berbea,
Sodomakoen antzeko agintariok,
entzun gure Jainkoaren irakaspena,
Gomorrakoaren antzeko herri horrek:

«Garbitu zaiteze, garbitu;
kendu nire begien aurretik zeuen egintza gaiztoak;
itzi oker egiteari, ikasi on egiten;
bilatu egizue zuzenbidea:
lagundu zapalduari, egin justizia umezurtzari,

defendatu alarguna.

Zatoze orduan kontuak garbitzera, dino Jaunak:
zuen pekatuak gorrimin badira be, edur zuri bihurtuko dira,
eta purpura baizen gorri badira be, artile zuri izango dira.

Nire esana egin nahi badozue,
lurreko guritasunetik jango dozue;
ez badozue nahi eta aurka jagitzen bazarie,
ezpatak iruntsiko zaitue».

Halan berba egin dau Jaunak.
Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 50 [49], 8-9. 16b-17. 21. 23 (R/. 23b)

R/. **Zuzen dabilenari deutsat Jainkoaren salbazinoa erakusten.**

V/. Ez zaitut salatzen zeure sakrifizioakaitik;
zure erre-opariak aurrean ditut beti.
Baina ez dot hartuko zure kortako

zekorrik,
ez zure eskortako akerrik. R/.

V/. Zelan aitatu daikezuz nire arauak
eta nire ituna ahotan hartu,
nire zigorrari gorroto badeutsazu
eta nire hitzei lepoa emoten? R/.

V/. Zuk horreek egin, eta Ni isildu?
Zu lakoa nazala uste dozu?
Salatu egingo zaitut, aurpegira botako dana. R/.

V/. Esker onezko oparia eskeintzen deustanak,
horrek emoten deust aintza,
onbideratzen danari
erakutsiko deutsat neure salbazinoa. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

*Ez* 18, 31

V/. Kendu zeuengandik
egindako gaiztakeria guztiak, dino Jaunak,
eta barritu egizuez zeuen gogo-bihotzak.

## EBANJELIOA

*Esan, esaten dabe, baina egiten ez.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 23, 1-12

Aldi haretan, honan berba egin eutsen Jesusek jentetzari eta ikasleei: «Lege-maisuak eta fariseuak Moisesen maisu-aulkian jesarrita dagoz. Egizue, beraz, eta bete hareek esandako guztia; baina ez egin egiten dabena; ze, esan, esaten dabe, baina egin ez. Zama astunak eta eroan ezinekoak lotzen ditue, eta besteei leporatzen; baina eurek atzamar batez be ez ditue mogitzen. Egiten daben guztia, jenteak ikusteagaitik egiten dabe; zinta zabalak erabiltzen ditue bekokian, eta borlatxu deigarriak mantu barrenean. Afarietan lehenengo jarlekuak, eta sinagogetan aurreaurreko aulkiak maite ditue, plazetan jenteak agur egitea eta guztiek “maisu” deitzea.

Zuek, ostera, ez itzi inori “maisu” deitzen, ze bakarra da zuen maisua, eta zuek guztiok alkarren senide zarie. Eta ez deitu lurrean inori “aita”, ze bakarra

da zuen Aita, zerukoa. Eta ez itzi inori “gidari” deitzen be, ze bakarra da zuen gidaria, Kristo.

Zuetariko handiena izan bedi zuen zerbitzari. Bere burua goratzen dauana beheratu egingo dau Jainkoak, eta bere burua beheratzen dauana goratu».

Jaunak esana.

## Garizumako II. eguaztena

### I. Irakurgaia

*Zatoze, jo dagigun Jeremias.*

Jeremias Profetaren liburutik

*Jr* 18, 18-20

Egun hareetan, batzuek inoen: «Zatoze, pentsatu dagigun Jeremias zelan galdu; ez da abaderik faltako legea irakasteko, ez jakitunik aholku onak emoteko, ezta profetarik be Jainkoaren hitza iragartzeko. Zatoze, jo dagigun mihinean eta entzungor egin haren esanei».

Arduratu nitaz, Jauna; entzun nire salatzaileek dinoena.
Txarraz ordaintzen ete da ona?

Hilobia zulatu dabe niretzat!
Gogoratu egizu zelan egon nintzan zure aurrean,
horreen alde erreguka,
zure hasarrea horreengandik aldentzeko.
Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 31 [30], 5-6. 14. 15-16 (R/. 17b)

R/. **Salbatu nagizu, Jauna, zeure maitasunaz.**

V/. Atara nagizu jarri deusten saretik,
Zeu zaitut-eta gordeleku.
Zure eskuetan izten dot neure bizia;
askatu nagizu, Jauna, Jainko leiala. R/.

V/. Jentearen marmarra entzuten dot,
izu-ikara edonon; nire aurka hartu dabe alkar,
niri bizia zelan kenduko. R/.

V/. Baina nik, Jauna, Zugan dot konfiantza;
hau dinot: «Zeu nire Jainko».
Zeure eskuan dot neure zoria,
libratu nagizu arerio eta

pertsegitzaileen eskutik. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

Ik. *Jn* 8, 12

V/. Neu naz munduaren argia, dino Jaunak;
Niri jarraitzen deustanak izango dau bizirako argia.

## EBANJELIOA

*Heriotzara kondenatuko dabe.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 20, 17-28

Aldi haretan, Jesusek, Jerusalemera igoten ziharduala, hamabi ikasleak aparte hartu eta esan eutsen bidean: «Begira, Jerusalemera igotzen dihardugu eta Gizonaren Semea abade-buruen eta lege-maisuen esku itziko dabe, heriotzara kondenatuko dabe eta atzerritarren esku itziko, hari burla egin deioen, zigorkatu eta kurutzean josi dagien; baina hirugarren egunean biztuko da».

Orduan, zebedeotarren ama hurreratu jakon Jesusi bere semeakaz eta aurrean ahuspeztu, eskari bat

egiteko. Jesusek itaundu eutson: «Zer gura dozu?» Eta harek: «Agindu egizu nire seme bi honeek, jesarri daitezala zure erreinuan bata zure eskuman eta bestea zure ezkerrean».

Eta Jesusek: «Ez dakizue zer eskatzen dozuen. Gauza ete zarie Nik edan behar dodan kalizatik edateko?» Erantzun eutsoen: «Bai, gauza gara!» Jesusek orduan: «Nire kalizatik edan, bai, edango dozue; baina nire ezker-eskuman jesartze hori, ez dago nire esku inori emotea; nire Aitak norentzat prestatua dauan, hari emongo jako».

Beste hamarrak, hori entzutean, hasarretu-hasarretu egin ziran anaia biakaz. Baina Jesusek dei egin eta esan eutsen: «Badakizue herrietako agintariek menpean hartzen dituela herriak, eta handikiek euren agintea ezartzen deutsiela. Ez bedi izan holan zuen artean; ezpada ze, zuen artean handi izan gura dauana izan bedi zuen zerbitzari, eta zuen artean lehenengo izan gura dauana izan daitela zuen morroi. Ze, Gizonaren Semea be ez da etorri zerbidua izatera, zerbitzari izatera baino, eta bere bizia askoren

ordainsari emotera».
Jaunak esana.

# Garizumako II. eguena

## I. IRAKURGAIA

*Madarikatua konfiantza gizakiagan dauana.*
*Bedeinkatua konfiantza Jaunagan dauana.*

Jeremias Profetaren liburutik

*Jr* 17, 5-10

Honan berba egiten dau Jaunak:
«Madarikatua konfiantza gizakiagan dauana,
giza indar hutsean oinarritzen dana
eta bihotza Jaunagandik urruntzen dauana.
Basamortuko kardulatzaren antzeko da,
ez dau sasoi onik izango;
basamortu kiskalian landatuta dago,
bizi ezinezko gatz-lurrean.

Bedeinkatua konfiantza Jaunagan dauana,
bere euskarri Jauna dauana.
Ur-ertzean landatutako zuhaitzaren antzeko da,
ur bizigarrietara zabaltzen ditu

zuztarrak;
ez deutso sargoriari bildurrik,
haren orriak beti hezerik;
lehor-urtean be ha nasai,
ez deutso itziko frutu emoteari.

Ez da ezer giza bihotza baino maltzurragorik eta osagatxagorik.
Nork ezagutu?
Nik, Jaun honek, arakatzen ditut bihotzak eta aztertzen barruak,
nori bere jokabidearen ordaina,
beraren egiteek merezitakoa, emoteko».

Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 1, 1-2. 3. 4 eta 6 (R/. *Sal* 40 [39], 5a)

R/. **Zorionekoa Jaunagan itxaropidea jartzen dauana!**

V/. Zorionekoa gaiztoen aholkuari jarraitzen ez deutsana,
pekatarien bidean ez dabilena,
ezta lotsabakoen batzarrean jesartzen be;

Jaunaren legean atsegin dauana baino,
haren legea gau eta egun hausnartzen dauana. R/.

V/. Ur-ertzean landaturiko zuhaitzaren antzekoa da:
emoten dau bere sasoian frutua,
eta ez jako orririk igartzen;
egiten dauan guztiak ondo deutso urteten. R/.

V/. Ez holan gaiztoak, ez holan,
haizeak daroan lastoaren antzekoak dira.
Jaunak zaintzen dau zintzoen bidea;
gaiztoena, barriz, galdu egiten da. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

Ik. *Lk* 8, 15

V/. Zorionekoak Jainkoaren hitza
bihotz onez eta zabalez entzunik,
barruan gorde eta iraupenez frutu emoten dabenak.

## EBANJELIOA

*Zuk zorion franko izan zenduan bizitzan,*
*Lazarok, barriz, zorigatxak;*
*orain harek atsegina aurkitu dau, eta zuk oinazeak.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 16, 19-31

Aldi haretan, honan berba egin eutsen Jesusek fariseuei: «Bazan gizon aberats bat, purpuraz eta lino finez jantzi eta egunero jai ederrak egiten zituana. Lazaro izeneko eskekoa, ostera, aberatsaren etxe-aurrean etxunda egoten zan, zauriz josita; gogotsu jango eukean aberatsaren mahaitik jausten zana. Txakurrek eurek be etorri eta zauriak miazkatzen eutsoezan.

Horretan, hil zan eskekoa, eta aingeruek Abrahamen altzora eroan eben. Hil zan aberatsa be, eta lurperatu eben. Hilen Egoitzan oinazetan egoala, begiak jaso eta Abraham ikusi eban urrutian eta Lazaro haren altzoan, eta deadarka esan eban: "Aita Abraham, erruki zakidaz! Bialdu egizu Lazaro atzamar ertza uretan busti eta niri mihina freskatzera, ze, oinaze gorritan nago sugar honeetan".

Baina Abrahamek erantzun eutson: "Seme, gogoratu egizu zuk zeuk zorion ugari izan zenduala bizitzan, Lazarok,

barriz, zorigatxak; horregaitik, orain harek atsegina aurkitu dau, eta zuk oinazeak. Gainera, gure eta zuen artean leza handia dago, eta nahita be ezin da inor hemendik zuengana igaro, ezta hortik gugana be”.

Aberatsak barriro: “Orduan, aita Abraham, bialdu egizu, mesedez, Lazaro gure aitaren etxera, bost anaia baditut-eta; jarri dagizala jakinaren gainean, eurak be oinaze-leku honetara etorri ez daitezan”. Abrahamek erantzun eutson: “Han ditue Moises eta profetak; entzun deieela”.

Harek ostera be: “Ez, aita Abraham; hildakoren bat joango balitxake, bihotz-barrituko litzatekez”.

Baina Abrahamek erantzun eutson: “Moisesi eta profetei entzuten ez badeutsie, ez dabe sinistuko ezta hildako bat biztuta be”».

Jaunak esana.

## Garizumako II. barikua

### I. Irakurgaia

*Horra non datorren ameslaria;*
*hil dagigun.*

Hasiera liburutik

*Has* 37, 3-4. 12-13a. 17b-28

Israelek, hau da, Jakobek, maiteago eban Jose gainerako semeak baino, zahartzaroko semea ebalako, eta soineko luze apaina egin eutson. Aitak maiteago ebala ikusirik, anaiek gorrotoa hartu eutsoen, eta hitza bera be ukatu egiten eutsoen.

Joseren anaiak Sikemera joan ziran, aitaren artaldeak larratzera. Israelek esan eutson Joseri: «Zure anaiak Sikemen dira ardiak larratzen. Hareengana joan behar dozu». Joan zan, bada, Jose bere anaien bila, eta Dotanen aurkitu ebazan.

Hareek urrunera ikusi eben eta, eurengana heldu baino lehen, alkar hartu eben ha hiltzeko. Honan inotsoen alkarri: «Horra non datorren ameslaria; ea, hil eta bota dagigun ur-putzu batera, eta piztitzarren batek iruntsi dauala esango dogu; orduan ikusiko dogu zertarako izan dituan bere ametsak».

Hori entzutean, Jose hareen eskuetatik libratu nahian hasi zan

Ruben. «Ez dagigun hil –esan eutsen–. Ez isuri odolik. Bota egizue eremuko putzu batera, baina ez egin kalterik». Jose anaien eskuetatik libratu nahi eban aitari bihurtzeko.

Honan bada, Jose anaiakana heldu zanean, kendu eutsoen soineko apain ha eta urik bako putzu batera bota eben. Ondoren, jateko jesarri ziran.

Horretan, Galaadetik etorren ismaeldar bidaiari-talde bat ikusi eben. Egiptora joiazan, gameluetan usaingarriak, erretxina eta mirra eroanez. Orduan, Judak esan eutsen anaiei: «Zer irabazten dogu geure anaia hil eta haren heriotza ezkutatuz? Saldu deiegun ismaeldarrei, kalterik egin barik, gure anaia dalako eta gure odolekoa».

Merkatariak igarotzean, atara eben Jose ur-putzutik eta zidarrezko hogei txanponetan saldu eutsien. Hareek Egiptora eroan eben.

Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 105 [104], 16-17. 18-19. 20-21 (R/. 5a)

R/. **Ekarri gogora Jaunak egindakoirariak.**

V/. Gosea bialdu eban lurraldera,
janari-hornidura guztia kendu eutsen;
bialdua eban, ostera, aurretik gizon bat,
Jose, esklabotzat saldua. R/.

V/. Katez lotu eutsoezan oinak,
burdinazko lepokoa gehitu,
harek iragarria bete zan arte,
holan frogatu eban Jaunaren hitzak
haren errubakotasuna. R/.

V/. Orduan, ha askatzeko agindu eban erregeak,
libre izteko, herrien nagusiak;
eta bere jauregiko buru egin eban,
bere ondasun guztien administratzaile. R/.

Ebanjelio aurreko txatala

Ik. *Jn* 3, 16

V/. Hain maite izan eban Jainkoak mundua,
bere Seme bakarra emon eutson;
harengan sinisten dauanak betiko bizia dau. R/.

## EBANJELIOA

*Oinordekoa dok. Hil dagigun.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 21, 33-43. 45-46

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen abadeburuei eta herriko zaharrei: «Entzun parabola hau: Behin baten, nagusi batek mahastia landatu eban eta hesiz inguratu; bertan dolara egin eta torrea eregi eban; gero, nekazari batzuri errentan itzirik, urrutira joan zan.

Mahatsa batzeko sasoia heldu zanean, bere morroiak bialdu zituan nekazariakana, frututik egokion partea jasotzera. Nekazariek, baina, morroiei heldu eta bata jo, bestea hil eta bestea harrikatu egin zituen. Barriro beste morroi batzuk bialdu zituan, aurrekoan baino gehiago, eta hareei be beste hainbeste egin eutsien. Azkenean, bere semea bialdu eutsen, bere artean esanez: “Izango deutsoe begirune nire semeari horraitino”.

Nekazariek, ostera, semea ikustean, esan eutsoen alkarri: “Oinordekoa dok.

Hil dagigun eta geuretzat izango dok ondarea”. Heldu, mahastitik kanpora bota eta hil egin eben». Jesusek itaundu eutsen: «Zer egingo deutse nekazari horreei mahasti-jaubeak, bihurtzean?»

Erantzun eutsoen: «Errukirik barik hilko ditu, eta bere sasoian frutua emongo deutsoen beste nekazari batzuri itziko deutse mahastia».

Jesusek esan eutsen: «Ez dozue Liburu Santuan behin be irakurri:

“Etxegileek baztertutako harria
giltzarri gertatu da.
Jaunak egin dau hori,
gure begien harrigarri?”

Horregaitik dinotsuet: Jainkoaren erreinua zuei kendu eta frutua atarako deutson herri bati emongo jako».

Parabola honeek entzutean, Jesus eurekaitik ari zala jaubetu ziran abadeburu eta fariseuak, eta bera atxilotu guran ebiltzan; baina jentearen bildur ziran, ze guztiek euken profetatzat.

Jaunak esana.

# Garizumako II. zapatua

## I. IRAKURGAIA

*Itsas hondora botako ditu gure pekatu guztiak.*

Mikeasen Profezia liburutik

*Mi* 7, 14-15. 18-20

Larratu egizu, Jauna, artzain-makilaz zeure herria,
zeure ondareko artaldea,
bakarrik eta sastraka artean bizi da-eta,
lur emonkorrez inguraturik egon arren.
Larratu bedi Baxanen eta Galaaden, antxina lez.
Erakutsi egiguzuz mirariak,
Egiptotik urten zenduan egunean lez.

Nor Zu lako Jainkorik,
zeurea dozun herrian bizirik geldituei
gaiztakeria parkatu
eta bihurrikeriari ez ikusiarena egiten deutsanik?
Haren hasarreak ez dau beti irauten,
maitasuna jako-eta atsegin.

Barriro be izango dau errukia guretzat,
zapalduko ditu gure txarkeriak,
eta itsas hondora botako gure pekatu

guztiak.
Holan, zeure maitasun leiala agertuko deutsezu
Jakob eta Abraham gure gurasoei,
aspaldiko egunetan agindu zeuntsen lez.

Jaunak esana.

## Erantzun Salmoa

*Sal* 103 [102], 1-2. 3-4. 9-10. 11-12 (R/. 8a)

R/. Bihozbera eta errukiorra da Jauna.
V/. Bedeinkatu begi nire arimak Jauna,
nire barru osoak haren izen santua.
Bedeinkatu begi nire arimak Jauna,
ez bedi ahaztu haren mesedeaz. R/.

V/. Erru guztiak deutsuz parkatzen,
gatx guztiak osatzen;
zure bizia hilobitik askatzen dau,
maitasunez eta errukiz koroatzen zaitu. R/.

V/. Ez dihardu eten barik auzitan,
ez dau hasarrea betiko gordetzen.
Ez gaitu erabiltzen gure pekatuek merezi lez,
ez deusku ordaintzen geure erruen

arabera. R/.

V/. Zelan zerua lurraren gainean garai,
halan haren maitasuna begirune deutsoenentzat handi;
zelan sortaldea sartaldetik urrun,
halan ditu harek gure hobenak gugandik urruntzen. R/.

## Ebanjelio aurreko txatala

*Lk* 15, 18

V/. Jagi, aitagana joan eta esango deutsat:
Aita, pekatu egin dot Jainkoaren eta zure aurka.

## EBANJELIOA

*Zure anaia hau hilda egoan*
*eta barriro bizi da.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Lukasen liburutik

*Lk* 15, 1-3. 11-32

Aldi haretan, zergalari eta pekatariak hurreratzen jakozan Jesusi, entzutera. Eta fariseuak eta lege-maisuak marmarrean hasi ziran, esanez: «Honek ondo hartzen ditu pekatariak, eta jan be egiten dau eurakaz».

Orduan, parabola hau esan eutsen Jesusek: «Gizon batek seme bi zituan. Gazteenak esan eutson aitari: “Aita, emoidazu dagokidan ondarea”. Eta aitak banatu egin eutsezan ondasunak.

Handik egun gitxira, semerik gazteena, zituan guztiak baturik, urrutiko herrialde batera joan zan, eta han, nasaikerian biziz, ondasun guztiak jan zituan.

Dan-dana galdu ebanean, gosete handia sortu zan herrialde haretan eta beharrizana sentitzen hasi zan. Orduan, herrialde haretako bategana joan eta haren morroi jarri zan, eta harek bere lurretara bialdu eban txarrizain. Txarriek jaten ebezan ezkurrez sabela betetzeko gogoa sortzen jakon ze, ez eutson inork jaten emoten.

Orduan, bere senera bihurtuta, esan eban: “Hamaikatxu behargin bada nire aitarenean, ogi nahikorik daukala, eta ni hemen gosekilik. Jagi, aitagana joan eta esango deutsat: Aita, pekatu egin dot Jainkoaren eta zure aurka. Ez dot gehiago seme izena merezidu. Hartu nagizu zeure beharginetariko bat lez”. Eta jagi eta aitagana abiatu zan.

Oraindino urrun egoala, ikusi eban aitak eta erruki izan eban, eta, lasterka joanda besarkatu eta mosuka hasi jakon. Semeak esan eutson: “Aita, pekatu egin dot Jainkoaren eta zure aurka. Ez dot gehiago seme izenik merezidu…”.

Aitak, ostera, esan eutsen morroiei: “Atara behingoan soinekorik ederrena eta jantzi egiozue; ipini eraztuna eskuan eta jantzi oinetakoak; ekarri zekor loditua eta hil; egin dagigun jai-bazkaria ze, nire seme hau hilda egoan eta barriro bizi da, galduta egoan eta aurkitu egin dogu”. Eta jaia hasi eben.

Semerik zaharrena soloan zan. Etxera hurreratzean, soinua eta dantzak entzun zituan, eta, morroi bati deituta, zer gertatzen zan itaundu eutson. Morroiak erantzun: “Zure anaia etorri da eta zuen aitak zekor gizendua hil dau, semea onik bereganatu daualako”. Seme zaharrena itzel hasarratu zan, eta ez eban sartu gura. Urten eban aitak eta erreguka hasi jakon. Baina harek erantzun eutson aitari: “Hainbeste urte da zure zerbitzuan nagoala, zure agindurik behin be huts egin barik, eta

ez deustazu sekula ahuma bat be emon lagun artean jateko, eta hori zure semeori, emagalduakaz zure ondasunak jan dituan hori, etorri danean, zekor gizendua hil deutsazu”.

Aitak erantzun eutson: “Seme, zu beti zagoz neugaz, eta nirea dan guztia zeurea dozu. Baina egoki zan jai egitea eta poztutea ze, zure anaia hau hilda egoan eta barriro bizi da, galduta egoan eta aurkitu egin dogu”».

Jaunak esana.